# 1erro gainean puntua





munduratu nindutenean
haragi puska arrosa bigun
negartia besterik ez nintzen

ohartu gabe urte bat
egun bat ezarri zidaten
jaiotze datan

gizateriaren historia osoa
eraiki dute ene bizkarretara

izena eman didate
bularra eman didate
eta nik ez dut galdetu
zergatik

etxe bat familia bat eman didate
ingurukoen izenak irakatsi dizkidate
errepika-errepikaren barnerapenaz
maitatu behar dudan jendea
jarri didate begi zabalduen aurrean

hitza eman didate
ene mihia moldatu dute
eurenak moldatuak izan diren
molde berean

ibiltzen irakatsi didate
pauso bat bestearen aurrean jartzen
baina nekez ikasi dut zein pauso jarraitu
behar den
zein azkar ezabatzen den
pauso oro

eta hala ibilian-ibilian
munduratu nindutenean
besapean neraman
galdera ikurra
berbera
(edo antzeko bat)
eroango dut
hilobira.

(edo dugu, nahiago baduzu)

# azal-pena


Nahiago baduzu, irakurle nagi,
azalduko dizut nire asmoa
(hil dezagun misterioa)
argia ez, baina apala baita.
ebaki,

esan dizut izenburutik.
Aditz bat, infinitiboan
ala inperatiboan,
agian sustantibo bat.
Nork daki?
ebaki,

ez naiz soilik egiten dudana,
egin didatena ere banaiz.
Atzetik etorri den guztia (tradizioak)
gehi ni.
ebaki,

eta haiekin lotura berriak egin.
ebakitzearekin bat itsatsi
hari ikusezinak,
harreman etengabe berriak.
ebaki,

popatik Aristotele eta Leizarraga,
izen anpulosoak,
gera bitez haien lerroak ebakita
eta ongarri.
ebaki,

eta ostera itsatsi ebakitako hori.
oker zeuden lerroak eta
orain okerrago.

*Epopeia eta tragedia klasikoa,*
*hala nola komedia eta ditiranboa,*
*eta neurri handi batean auletika eta zitaristika,*
*denak dira oro har imitazioak.*
Aristotele, “Ars Poetica”

*Heufcarazco hitzac, nola fcribatzen,*
*hala letra guciequin Latinén ançora*
*pronuntiatzen-ere dirade: eta u vocala,*
*bethequi, ou baliz beçala.*
Leizarraga, “Iesus Christ Gure Iaunaren Testamentu Berria”

# tra(d)izioa



# hirugarren pertsona (goizean)

Argia oker sartu da.

Gaur ere gaur
esan dezake
atzo bezala
bihar bezala
gaur!

Gaur ere gaur
aurrez moldaturiko
pausoak zapaldu ditu
izan ere

Gaur ere gaur
ez du besteen
mina beregan

Begiak kanpora
begira baina
gogoa barruan

Gaur ere gaur
badaki gezurra
zer den
eta ez du
egia sinesten

Gaur ere gaur
bizi da zer arraio
den jakin gabe
existitzeko ezagutzen
duen era bakarrean
existitzen da
gaur ere

# hirugarren pertsona (gauean)



Hala ere, gaur ere...
Poetak jogurt bat jan du, naturala.
Poetak tenis partida hunkigarri bat
ikusi du telebistan.
Poetak dutxatik ateratzean
gorriune batzuk deskubritu ditu
izter artean.
Poetak ohi baino zigarreta bi
gehiago erre ditu.
Poetak pentsatu du
ilea moztu behar duela.
Poetak gogoa izan du
ttu egiteko
aldizkarien gainean.
Poeta lotara joan da
komuneko kateari
tira egin gabe.
Poetak ez du deus ebaki gaur
(idatzi bai, baina)
eta poeta deitzen diogu hala ere
(berak ez daki).







# idatzi bai, baina

ez,
ez daki,
zer idatzi ez daki,
ez dauka akaso, zer idatzi?
izango du ziur, idaztekorik, baina zer...
ez duelako nahi akaso denborak besterik gabe
aurrera egin dezan, barrengo saskietan zerbait egiten ari
denaren sentsazioa izatearren agian, gogo-zama arintzeko beharbada,
paperaren korronte zurian aurrera segitzeko kemena topatu nahian-edo, idatzi
nahi duela uste du, apur bat akituta dagoelako burua lo garraiatzen ohituta egoteaz,
berritasunaren deserosotasunak aspaldian ez duelako ziztatu. erosotasunaren hutsak eta fik-
ziozko minak logura ematen diote, bere golkoak esaten dio: "orain arte dena ondo doa", maiz
gezurra dela jakin arren, noiz arte jakin gabe. maitatzea, arnastea ere kosta egiten zaio, maiz
masoka kontziente, atsekabea eta desesperazioa masturbatzen ditu doan tokira doalarik, ez
ez du berriro negar beltzik egingo paperean, lehen pertsona ezkutatuko du hirugarrenean
artistakeriak ahaztu eta artisauaren artaziak altxatuko ditu gorantz. gezilariaren geziaz
seinalatuko ditu jopuntuak (hatzarekin edo pistolarekin baino eleganteago baita)
arnas batean dena ebakiko du, dena itsatsi, dena itsatsiko du, dena ebaki,
traizioa baita tradizio bakarra. denak dauka denaren antza, hala da.
ederra ona dela diozu, Platon. etxean ahaztu dituzu kateak?
idatzi bai, baina adi, kontuz, erne. zer esan nahi ote du?
zerbait esan nahi al du? zerbait esan behar al da?
har ezazu: ebaki, itsatsi, berriro ebaki. eta?
zerbait eutsi al duzu? zurekin ari naiz,
bai, zurekin: irakurle, agian idazle.
zilegia iruditzen al zaizu hau?
poema honela amaitzea?
pixkanaka, apurka,
harea ale gisara
irristaka doa
zurirantz
zurekin
zurira
ziur
zu
?

# Poema txar bat

Poema txar bat idazteko
(zaude ziur)
aski duzu idazteko nahia
beharra dela pentsatzea.

Poema txar bat idazteko
abiapuntu ona da
poema hitza.

Poema txar bat idazteko
lehenengo unetik ona dela
pentsatzea bezalakorik ez dago.

Poema txar bat idazteko
denboraren joanari
higuina izan behar zaio.

Badakizu:
Poema txar asko idatzi behar dira
poema Txar bat idazteko.

# ebaki



Idazteko idatzi behar da!
Koadernotxoa zabaldu eta
orri zuria zikintzen hasi zara.
Lerroak ebakiz
esaldiak poesia
bihurtzen direla
uste duzu.
Ez duzu bilatzen,
hitzak isurtzen dituzu
pentsatu gabe,
ohartu gabe
poesia ez dela lerroak ebakitzea,
poesia nonahi noiznahi nolanahi dela,
Poesia edo Jainkoa esatea
zehazgabetasun bera dela.

Eta hala ere, artaziak eskutan.

# edwarden mitoa









garai bateko sendabidea ohi zen
artaziak eskutan
ebaki eta errezo egin
*tagliare è pensare e vedere*
hobe hori, besterik gabe
errezo egin baino
*never cut what you can untie*
sorkuntza lotugabea horratx artea
ebakiduraz betea buruz eta bihotzez
*découper ce qu'on pense est bien fait*
hel nazazu Edward
errezoan ez dakizunez
*KIM: Hold me.*
eta hala ere artaziak eskutan
(Edward Scissorhands)
ezin duzu ebaki baino
*EDWARD: I can't.*



# Plagioa Pessoari

Ezin ebaki baino.
Papera naiz ni (zurbil),
eta norbaitek isurtzen ditu
hitzok
nire gainean.

Ezin irten.

Ezin

nik idatzitako hitzak
irakurri
ni ez banintz bezala
hitzon
irakurlea
ni ez banintz bezala
hitzon
idazlea

Baina
zer naiz ni,
papera besterik?

Zurbil, akaso ivoire.



# galdera hutsalak zurbilari



*Ivoire*
hitz bat
baino ez al da,
*ivre*ren hurbilekoa?
Kate herdoilen kirrinka
musika al da Arthurrentzat?
Akaso gau gorraren beltzean
ikusiko du izerdi ttanttorik.
Absolutuki modernoa al da
mamu biziei tiroa jotzen?
Idatzi al du poesiarik
esklabuen begietan
Rimbaudek?
*Ivoire...*
*Ivre...*

*Tout acte est un coup de revolver cerebral.*
Tristan Tzara, "Sept manifestes Dada"

# inbertsioak




Akaso *ivre* nengoen.
Gau eguzkitsua zen.
Errua, ardura, zigorra...
Izar trumoitsuak kar kar kar
dardara urdinez barrez lehertzen.
Oroitza galdu eta
pena hutsean ito nituen
oroitzapen denak.
Norbait leihotik
norbait hormatik
begira begia begira.
Uniformerik gabe zakurrak
hemen eta han ortozik
ñir-ñir kexu ziren mikroak eta frigoak.
Sakonera-sakonera sustraiek bidai
lorontzietan
baina zer egiten duzue hor, zatozte hona
katuei amonek
katiusketan amoniako usaina nik
horma zulatuz leiho bat
leihoa zulatuz begi bat
begira-begira
zakurrik gabe uniformeak
pena galduta oroitza hutsean
ito nituen
kar kar kar
trumoi izartsuak barre urdinez dardaraka
zigorra, ardura, errua...
eguzki gautsua zen.

# Pandoraren mitoa



zigorra ardura errua
denak egotzi nahi
nori eta zuri
Pandora femme fatale

**"jolasa irrika
iluna
nahiago!"**

horma harresia murrua
denak opari nahi
nori eta zuri
Pandora femme fatale

**"atea leihoa zirrikitua
nahiago!"**

aiztoa aizkora aitzurra
denak mehatxu nahi
nori eta zuri
Pandora femme fatale

**"zuloa hazia kea
nahiago!"**

# behartuta





Nahiago
zerbait egin, norbait eragin.

Nahiago
zerbait esan, norbait izan.

Behartuta.

Nahiago
zerbait sentitu, norbait hunkitu,
ezaren hari fina
hitzaren putzez mugitu,
hiltzera nator

Behartuta.

Zerbait uztera, ezagutzera
grinaren mina,
etxeko arrotz izatera
nonahi, beti

Behartuta.



Harridura ikurrak okertzera ohituta.
Bete gabe agortuta,
azal bionboaren atzean uzkurtuta.

Heldu gezur beldur
tronpatutako lur.

Behartuta.

Bestela ezin dudalako.
Behar dudalako.

*Quando digo "é evidente", quero acaso dizer "só eu sou que o vejo"?*
*Quando digo "é verdade", quero acaso dizer "é minha opinião"?*
*Quando digo "ali esta" quero acaso dizer "não esta ali"?*
*(...) Sim, antes de sermos interior somos exterior.*
*Por isso somos exterior essencialmente.*
Alberto Caeiro, "Seja o que For"

# **e**rantzuna
## (behar dudalako)





*Troppo mare. Ne abbiamo veduto abbastanza di mare.*
Cesare Pavese, "Gente spaesata"

*Marinelak, benetako marinelak behar duen aurreneko gauza,*
*ontzia bera baino berezkoago duena,*
*labana da.*
Koldo Izagirre, "Hemen ontziratu zen Lafayette"

# itsaso sobera



Zorabioak hartzen nau noan bakoitzean.
Norabidea dakidanean ere,
beti dago ustekabeko korronteren bat
kulunkarazten nauena eta nire azala
ez da behar bezain lodia
halako zurrunbiloak eta enbatak jasateko.
Zorabiatzen naiz, ez naiz ene ontzi txikia
gobernatzeko gai.

Itsaso puska batzuk ezagutu ditut,
pentsa, zenbait uretan ipar-orratzik ere ez dut behar,
baina bakarrik sartzen banaiz ur ilunetan,
ezezagunari diodan ikarak garaitzen nau.
Azken batean behar dut itsasoa, baina ez dut osoki maite.

Labainkorrak dira itsasoaren fruituak,
arrainak ez datoz bakarrik eskuetara,
lana da lege bakarra eta hala ere, ez du deus ziurtatzen.
Olatu beti berriak itsaso beti zaharrean,
kalatxorien konpainia urria, inon porturik ba al da?



Gazia da literato-ura.
Hurrupa txikian egarria ematen du,
zanga luzean itogarria da. Baina murgiltzen naiz hitzen beltzean,
nabigatzen dut alegera edo goibel, zeruen ilunaren arabera,
eta beti daramat labana aldean.



Ezin dut ekidin, hala ere.
Zorabioak hartzen nau liburutegira noan bakoitzean.

*But Oh! As to embrace me she inclined,*
*I waked, she fled, and day brought back my night.*
John Milton, "Sonnets"

*Nem ópio nem morfina. O que me ardeu,*
*Foi álcool mais raro e penetrante:*
*É só de mim que ando delirante—*
*Manhà tào forte que me anoiteceu.*
Mário de Sá-Carneiro, "Álcool"

# **Zurian iluna**



*Y el azúcar,*
*¡qué puñalitos sueña en su vigilia!*
Federico García Lorca, "Muerte"

# dada automatikoa, wash and dry



# bi





Bi dira.
Bi mutil, elkarren ondoan eserita.
Ez dute hitz egiten (eta zergatik bai?)
Tiroka hiltzen ari dira,
bi tiro batek, bi tiro besteak,
kanuto bat.

Poliki hartzen poliki ematen duten kea,
bi tiro batek, bi tiro besteak,
zuria da, zuria.

Bankuaren gainean, geldirik tapa-tapa,
basket zapata beltzak.
Irribarrerik ez (eta zergatik bai?),
baina ezpainek estaltzen dituzten hortzak
zuriak dira, zuriak.

Bi tiro batek, bi tiro besteak.
Beltzak dira bien itzalak, elkarren ondoan,
itzalezko bankuan eserita.

Beltzak dira lurrerantz dituzten niniak.
Zuringoak bezala, niniak biltzen dituzten
begiak, zuriak.

Zuria da kanutoaren papera, zuria,
erre ostean, beltza da.

Azken bi tiroak batek, azken bi tiroak besteak.
Elkarren ondoan eserita
ez dute hitz egiten (eta zergatik bai?).

Bi dira, bi mutil.
Zuria du batek azala,
bestea zerbait esatera doa.

# Zerbait esatera

Libururik ederrenak
lumetan harrapaturik
beldurrez
gelditu direnak dira.

Hitzik beharrezkoenak
hortz eta mihi artean
ezkutaturik
gelditu direnak dira.

Keinurik erabakigarrienak
ezpainen artean, poltsiko barruetan
lotsaturik
gelditu direnak dira.

Paper batean gorde nuen olerki hau,
gelditu ginen egunean
zuri emateko.
Baina

# errazagoa da poeta izatea



Baina
gogorra izan behar du umoregilea edo dramagilea izatea.
Hala katalogatuta egotea.

Oso gogorra izan behar du,
lan zaila benetan (ez nabil txantxetan).
Emozioaren bila beti, emozio mota berdina beti.
Indiferentziaren beldur beti.

Baina
errazagoa da poeta izatea,
abiapuntua indiferentzia baita
(inork ez du ezer espero poetaz).

Zerbait piztea lortzen badu,
ondo. Bestela ez du axola.



*Kontadazu, Musa, zidor askotariko gizonaren historia.*
Homero, "Odisea"
*Ma pauvre Muse, hélas! Qu'as-tu donc ce matin?*
Charles Baudelaire, "La muse malade"

# Mousse ivre

Kiratsa besterik ez, paper gainean.

Baina nik
derrepentean jarioa, oh somatzen dut...

*Abestu daigun zelayan*

Ez esan gezurrik

Bai bai bai
Ezin dut gelditu, ez ez ez dut gelditu nahi.
Zainetan daramat ene ondasun guzia:
putzu handi bat eta kortsario baten
arropa zintzilika, ekaitz perfektuaren erdian.

Bai bai bai.

Ez ez ez.
Musak berriro joanak dira
ardoz horditzera.

Baina nik
somatzen dut, oh, jarioa derrepentean...

*Abestu daigun zelayan!*

# enamoratubak zelayan



*Lauaxeta:*
Argi daukazuz begijok, gorputza dozu liraña:
abestu daigun bi-bijok. Abestu daigun zelayan
soin orren lilli-usaña, millazkaen antzo dantzan.

*Bilintx:*
Goguan izango det bai gaurko eguna,
berriro biyok alkar ikusi deguna;
auxen da ditxa eta auxen da fortuna,
zergatikan zu zeran, maitetxo kutuna,
nere asnasia ta nere osasuna.

*Lauaxeta:*
Dantza-dantzari bedartzan. Ete-gara udabarrijan?
Ara txindor bi zugatzan. Txirula ta danboliña
entzuten dira mendijan. Zeruba dagon oztiña!

*Bilintx:*
Au nere zoramena zutzat gustatuta,
bildur naiz gera nadiñ burutik galduta;
ainbesteraño nago enamoratuta,
nai badezu, oñetan belaunikatuta,
adoratuko zaitut, agindu zazu-ta.

*Lauaxeta:*
Barre-dagigun leunkiro, barre auxe dan ixilla!
Tanbolin, abil, astiro! Mendiko axe biguna
ator zelaira lora-billa, lorak eta mattasuna.

*Bilintx:*
Zure graziyetara oso zoratuba,
biyotza sentitzen det enamoratuba;
ni bizi naizen arte, baratz loratuba,
dizdizara klarozko izar doratuba,
ez zaizu faltatuko nork adoratuba!

# alexandrosen mitoa

Jada ezerk ez du axola.
Zure armadaren lerroak
ebaki dituzte lantza luzez.
*HAMLET—Pr'ythee, Horatio, tell me one thing.*
Ispiluak jasan ezin zuen isla
zen zurea, zure itzala ere
ez zen ausartzen pausoa
zure aurretik jartzen.
*HORATIO—What's that, my lord?*
Eta hemen zaude orain,
gudu-zelaian horizontal,
gudu denetan erori diren
gorpu guztiak bezala,
*HAMLET—Dost you think Alexander looked*
*o' this fashion i' the earth?*
lurrarekin berdinduta.
Zu, handietan handiena
*HORATIO—E'en so.*
izana zaren hori, orain,
kiratsa besterik ez zara
*HAMLET—And smelt so? Pah!*



*Le soleil: ô monstre, ô Gorgone, ô méduse, ô soleil.*
Raymond Queneau, "Chêne et Chien"

# Medusaren mitoa



ez zaizu faltako argirik:
zure burua eguzkia da
oi munstroa oi Gorgona oi Medusa

ederra ez zarenik ezin esan
izan ere ikusezina
ezin da konparazioen eta balorazioen
jokoan sar

ez zaizu faltako lagunik:
zure adatsak hidra pozointsuak dira
oi munstroa oi Gorgona oi Medusa

ezkutuan egotera behartua
onar ezazu hilkor patua
izan ere ezkutuak
itzuliko dizu ematen
diozuna



ez zaizu faltako babesik:
zure begiak zulo beltzak dira
oi munstroa oi Gorgona oi Medusa

ez zaizkit aski izan kuraia irrika
zu ikustean ezpataren musua ematear
izan ere ni ez naiz Perseo
orain harri betiko baizik

ez zaizu faltako hitzik:
zure mihia kiribil amaitezina da
oi munstroa oi Gorgona oi Medusa

isladarik ez brontzezko ispiluetan
ikusezina nauzu
izan ere harri arteko harri naiz
zure aurrean

ez zaizu faltako flashik:
zure aurpegia Versace arropen logotipoa da
oi munstroa oi Gorgona oi Medusa...

...eguzki argia!

# ilusioa



Ez da eguzki argia bezalakoa,
naturala, puntuala,
ilusioa nigan.
Berekoia, iheskorra, kontrolaezina,
katu kaletarraren antza handiagoa du.
Datorren moduan, badoa.

Eguzki argia iritsi da gaur ere
nire teilatu gainera,
eta ez da inondik ikusten
katu kaletar putarik.

*Keeping time, time, time,*
*in a sort of Runic rhyme*
*to the throbbing of the bells,*
*or the bells, bells, bells.*
Edgar Allan Poe, "The Bells"

# elur lur ur



Ez da inondik ikusten deus.

Dratz, dratz, dratz...
pausuek dratz egiten dute
elur gainean.

Urruntzen doan puntu beltza da,
dratz, dratz dratz...
akaso gizon bat.

Nola deitzen den?
Ez dakit, ez dut ezagutzen.

Nolakoa den?
Ez dut hemendik ikusten.

Gizonak aurrera jarraitzen du
dratz, dratz, dratz...
gero eta txikiagoa da.

Baina zer egiten dut nik hemen?
dratz, dratz, dratz...
Zergatik ez dut hotzik sentitzen?

(irakurri hurrengoa)

ez irakurri lerro hau
irakurri hurrengoa
eta hurrengoa
irakurri
ez irakurri lerro hau
grabitatearen legea

# errespetatu

grabitatearen legea
ez irakurri lerro hau
irakurri
eta aurrekoa
irakurri aurrekoa
ez irakurri lerro hau

# 1erroak kateatu

Katebegia da lerro hau,
zentzuari itsu zaiona.
Arraioa!

Idazketa ikasketa dela
egin didazu zin,
paperaren arima zuri.
Ahaztu duzu ikasketa ere
badela ahazketa,
idazketa ere uzketa dela.
Lerroak kateatzeak aske
egiten nauela diozu ziur,
eta katuki drogazaletzen nauzu
zure zuritasunean.
Zure hutsa betetze hutsak
betetzen nauela uste duzu,
zure zurian ziur,
baina
odola baino tinta isurtzea
nahiago dudan arren...
Arraioa!
Zugatik bizia emateko
prest naizenik
etzazu uste.

# heraklesen mitoa

Etzazu uste niretzat ezezaguna zarenik:
jainkoek mimaturiko indar indartsua,
direnak eta ez direnak entzun ditut zutaz,
Giharrak miresgarriki puzten dituzula,
badakizula zure soslai ona zein den,
zein elastiko dagokizun hoberen.
Hor zaude, Aquarius bat edaten,
erdi-jainko, izerdi arteko errege,
auzoko gimnasioko enperadore.

Alabaina zer dakizu zuk, Herakles?
Ez zara jakiteko jaioa, egiteko baino.
Urezta zaitez urak agortu baino lehen.

Zeren eta gero
datorren? ero
eta odolbero
seme-alabak,
lan, lan, lan
jainkorik ez
lan, lan, lan
esku bi eta
begira gora
ez dira deus

oi!
o!
o

badakizu zer
erotuko zara
hilko dituzu
andrea, aita.
lan, lan, lan
makinatik at
lan, lan, lan
hanka parea,
eta hodeiak
ez dira Zeus.

*Only through time time is conquered.*
T.S. Eliot, "Burnt Norton"




# ebaki, laburbilduz

# ama!



Egin dezagun larrutan, ama.
Lot dezagun atzera, eten genuen hura.
Noan zure altzora, ama.
Emadazu titia, ene lehen ura.

Herioaren truk eman zenizkidan
hitza eta bizitza.
Ahanzturaren truk zenizkidan eman
kontzientzia eta memoria.

Eta orain, eta orain.

Itzul nadin zure baitara,
tenplurik gabeko ene jainko bakar.
Egin dezagun larrutan, ama.

Ama!